**Sarrera**

613 presok osatzen dute egun Euskal Preso Politikoen Kolektiboa. 613 preso horiek 87 espetxetan sakabanatuta daude. Preso guzti hauetatik 7 soilik daude Euskal Herriko espetxetan, eta hauek ere 3 espetxetan sakabanatuta daude. Preso kopururik handiena Espainiako espetxeetan aurkitzen da, 446 preso politiko daude 46 espetxetan sakabanatuta. Frantziako espetxeetan 140 preso aurkitzen dira 33 espetxetan sakabanatuta. Preso bana daude Portugalen, Ipar Irlandan, Eskozian eta Mexikon, eta 3 Ingalaterran. Honez gain, 11 preso daude etxean eta preso bat Erroman dago etxean atxilotuta. Preso bat konfinatua dago Franztian, Autunen zehazki.

Uztaila eta abuztua hilabete gogorrak izan dira salbuespeneko espetxe politikari dagokionez. Iosu Uribetxebarria, gaixo larriaren egoerak eta bere askatasuna ez onartzeak, senide eta lagunok uda osoan zehar Iosu etxeratzearen alde aritzea ekarri du. Izan ere, uztailaren 20an ospitaleratu zutela jakin genuenetik gure kezka nabaria izan da. Iosu oso larri dago, hiltzen ari da. Eta horregatik, orain arte egin izan dugun bezala Iosu eta gaixotasun larri eta sendaezinak dituzte beste hamahiru presoen berehalako askatasuna eskatu du behin eta berriz Etxerat elkarteak. Eta gauza bera egin dute Espainiako eta Frantziako espetxeetan aurkitzen diren gure senide eta lagunek ere; euren elkartasun osoa adierazi baitiote Iosuri borrokaldi ezberdinen bitartez.

Baina, bi hilabete hauetan argi geratu da senide eta lagunok ere ez garela espetxe politika krudel honen atzaparretatik kanpo geratzen. Sakabanaketaren ondorio latzak ezagutu ditugu abuztuan. Aipatu hilabete honetan hiru istripu jazo direlarik. 2012. urtean hamabi istripu eragin ditu jada sakabanaketak. Eta ondorio latzenak Mikel Egibar presoaren senideek jasan dituzte, istripu larri bat pairatu baitzuten Egibarren emazteak, hamalau urteko semeak eta hamabi urteko alabak. Hirurak ospitaleratuak izan ziren, eta emaztea egun oraindik ospitalean aurkitzen da.

Azken egunetan emandako gertakarien ondorioz behin eta berriz errepikatu dugu gure senideak heriotza zigorrera kondenatuak daudela. Iosu Uribetxebarria eta gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten beste hamahiru presoak dira horren adibide. Baina, hau nahikoa ez, eta badirudi gu ere heriotza zigorrera kondenaturik gaudela. Edozein unetan, edozein errepidetan edota edozein espetxe aurrean bizitza gal dezakegu, bai Algecirasen, Bapaumen, edota Zueran ere. Eta gainera, ez dio adinari erreparatzen. Hilabete honetan bertan adin txikiko bi senide larri zauriturik egon baitira ospitalean.

Guzti honegatik, jada behin eta berriz salatu dugun salbuespeneko espetxe honekin amaitzea beharrezkoa dela errepikatuko dugu. Gure eta gure senide eta lagunen eskubideak errespetatuak izan behar dute, inolako baldintzarik eta atzerapenik gabe.

1. 

# ESPETXEA ETA OSASUNA

## Iosu Uribetxebarria

Aspalditik ari gara gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten hamalau presoen egoera larria salatzen. Behin eta berriz adierazi dugu espetxean ez dutela behar bezalako mediku asistentzia egokia jasotzen, eta zoritxarrez uztailean hainbestetan kalean egon beharko lukeela exijitu izan dugun preso hauetako baten egoerak okerrera egin zuela jakin genuen.

2005eko apirilean, Iosuri giltzurruneko minbizia diagnostikatu zioten. 2006ko abenduan, legean onartua dagoen baldintzapeko askatasuna eskatu zen, bere gaixotasun larri eta sendaezina dela eta. 2007ko uztailan askatasun eskaera horren ukapena jakinarazten zioten. 7 urte hauetan zehar, hasierako diagnostikoa egin ziotenetik, espetxeak bere gaixotasunean izandako eraginak bere egungo osasun egoera okertu du.

Uztailaren 20an Iosu Uribetxebarria euskal preso politikoa Leongo ospitalean ingresatu zuten. Etxeraten alarma guztiak piztu zituen. Bi nodulu topatu zizkioten, bata buruan eta bestea birikietan, eta gainera metastasia du. Honek ezin egoera larriago batean kokatzen du: Iosu hiltzen ari da.

Iosu Uribetxebarria Donostiako Ospitalera ekarri zuten abuztuaren 1ean. Abuztuaren 8an, berriz, bere duintasunagatik gose greba bat hasi zuen. Abuztuaren 22an gose greba bertan behera utzi zuen, medikuen aginduz.

Iosu Uribetxebarria gose greban sartu zenetik, borroka ezberdinak jarri dituzte martxan euskal preso politikoek; hauetako gehienak gose greban sartu zirelarik. Espetxeetako borrokak forma ezberdinak izan dituzte, ekimen ezberdinak burutu direlarik: barauak, espetxeko janariari uko egitea, itxialdiak, elkarretaratzeak... Baina, euskal preso politiko gehienek gose grebak egin dituzte, eta egiten jarraitzen dute. 58 espetxetik gora izan ziren gose greban sartu ziren espetxeak.

Egunak aurrera joan diren heinean zenbait presok gose grebak bukatutzat eman behar izan dituzte arazo fisikoen ondorioz: konortea galtzea, bilirrubinarekin arazoak, giltzurrunetako arazoak, glukosarekin arazoak...

*Zenbait kasutan arazo hauek presoen osasunean ondorioak izan dituzte, adibidez:*

• Sevilla II espetxean aurkitzen den Manu Gonzalez presoak gose greba amaitu behar izan zuen giltzurrunetako gutxiegitasunagatik (insuficiencia renal).
• Granadako espetxean aurkitzen den Egoitz Koto presoak konortea bi aldiz galdu zuen ziegan, oso ahul aurkitzen zen.
• Fresnesen aurkitzen den Aitor Garcia presoak koliko nefritikoa izan du.

Hala ere, arazo fisikoengatik gose grebak bertan behera utzi behar izan dituzten presoek ere beste borroka batzuk abiatu dituzte (itxialdiak, barauak...). Zenbait presok gose greba bukatutzat eman duten arren, oraindik euskal preso politiko askok jarraitzen dute gose greban, jada egun asko direlarik ezer jan gabe daramatzatenak.

Kalean ere hainbat ekimen jarri dira martxan, eta Donostiako Ospitalean burutzen ari diren gose grebaz gain, hainbat baraualdi, itxialdi, manifestazio eta abar burutu dituzte Euskal Herriko hainbat txokotan.

Uztailaren 20an Iosu ospitaleratu zutenetik hilabete baino gehiago igarotakoan, bere askatasunaren inguruko erabakia aztertzen jarraitzen zuen Jose Luis Castro epaileak. Leongo eta Donostiako Ospitaleko medikuen txostenak esandakoaren aurka, Auzitegi Nazionaleko medikuek Iosu espetxean artatua izan daitekeela adierazi zuten. Iosuren askatasunaren inguruko erabakiarekin itzulinguruka jarraitzen zuten bitartean, abuztuaren 27an erradioterapia saioak jasotzen hasi zen Iosu.

Azkenean, abuztuaren 30ean, Jose Luis Castro epaileak Iosu baldintzapean aske uztea erabaki zuen.

## Txus Martin

Txus Martin gaixo larriari aplikatuta duen Laguntza Protokoloa (bere buruaz beste egiteko arriskua dutenei ezartzen zaiena, eguneko 24 orduak lagun baten zaintzapean egon behar dutelarik) hautsi zioten abuztuaren 28an.

Txus Zaballako espetxean dago 2011ko abenduaren 12tik. Bertan beti egon izan da beste preso batekin (soziala edo politikoa) protokoloak agindu bezala, baina, orain bat-batean eta Txusi inolako abisurik eman gabe protokoloa hautsi eta bakarrik utzi dute. Txusek, ordea, ezin du bakartua egon espetxean, egoera hau izan delako egungo gaixotasuna eragin duena. Eta, azken 2 urtetik hona laguntza Protokoloaren pean dago, hain zuzen ere, bere buruaz beste egiteko arrisku errealean dagoelako. Hortaz, onartezina da Zaballako espetxeak Laguntza Protokoloa hautsi eta egoera larrian aurkitzen den presoa bakarrik uztea. Benetan larria da Txus dagoen egoeran egonda, bakarrik aurkitzea.

## Gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten hamalau preso politikoak

**Jesus Mª MARTIN HERNANDO (Basauri)** - ESPETXEA: Zaballa. 1960. urtean jaioa. 2002an atxilotua. Nahasmen eskizo-afektiboa delirio osagarriarekin.

**Iñaki ERRO ZAZU (Iruñea)** - ESPETXEA: Almeria. 1960an jaioa. 1987an atxilotua. SCASEST erako Kardiopatia iskemiko larria. Bihotz kateterismoa: 3 stent ezarria ditu.

**Josetxo ARIZKUREN RUIZ (Iruñea)** - ESPETXEA: A Lama (A Coruña). 1958an jaioa. 1999an atxilotua. Kardiopatia iskemiko larria. Kateterismoa: Stent hodi batean.

**Isidro GARALDE BEDIALAUNETA (Ondarroa)** - ESPETXEA: Puerto I (Cádiz). 1951ean jaioa. 1985ean atxilotua. Kardiopatia iskemikoa- (SCASEST erakoa) Prostatako hiperplasia benignoa, Kataratak.

**Jose Ramon LOPEZ DE ABETXUKO LIKINIANO (Gasteiz)** - ESPETXEA: Villabona (Asturias). 1949an jaioa. 1989an atxilotua. Bradikardia sintomatikoa. Fibrilazio aurikularra, Prostatako adenoma.

**Josu URIBETXEBERRIA BOLINAGA (Arrasate)** - ESPETXEA: Mansilla (León). 1955ean jaioa. 1997an atxilotua. Giltzurruneko minbizia.

**Gotzone LOPEZ DE LUZURIAGA FERNANDEZ (Agurain)** - ESPETXEA: Martutene. 1959an jaioa. 1989an atxilotua. Bularreko minbizia.

**Jose Angel BIGURI CAMINO (Menagarai)** - ESPETXEA: Martutene. 1955ean jaioa. 1989an atxilotua. Prostatako adenokartzinoma (minbizia).

**Inmaculada BERRIOZABAL BERNAS (Zegama/Elorrio)** - ESPETXEA: A Lama (Pontevedra). 1951ean jaioa. 2009an atxilotua. Psoriasi artropatia, Diabetesa (DM-II), Diabetes oina, hipertentsioa, azkazaletako psoriasia, Asma bronkiala, belaunetako protesia.

**Gari ARRUARTE SANTA CRUZ (Hernani)** - ESPETXEA: Almeria. 1980an jaioa. 2003an atxilotua. Espondilitisa.

**Iñaki ETXEBERRIA MARTIN (Iruñea)** - ESPETXEA: Topas (Salamanca). 1964ean jaioa. 1996an atxilotua. Eboluzio luzeko Miopia Magnoa. Eskuineko begiko erretina hemorragia, Ikusmen zorroztasunaren galera, ezkerreko begiko afaquia.

**Jesus Mª MENDINUETA FLORES (Arbizu)** - ESPETXEA: Zuera (Zaragoza). 1968an jaioa. 1991ean atxilotua. Gaixotasun erreumatikoa, afektazio sistemikoarekin. Hori dela eta, aurrealdeko uveitisa . Bi disko-eten (lepoaldean eta gerrialdean, lepoko mina eta ziatikarekin) . Sinupatia aldi errepikariak.

**Aitzol GOGORZA OTAEGI (Orereta)** - ESPETXEA: Basauri. 1975ean jaioa. 1999an atxilotua. Nahaste obsesibo konpultsiboa.

**Jose Miguel ETXEANDIA MEABE (Larrabetzu)** - ESPETXEA: Topas (Salamanca). 1960an jaioa. 2003an atxilotua. Nahaste obsesibo konpultsiboa, Hepatitis C.

## Gaitz isilduak

Hain zuzen ere uztailaren 20an aurkeztu zuen Etxerat elkarteak Gaitz Isilduak dokumentala. Bertan gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten presoen egoeraren berri ematen da. Baina, egoera hori ez da informe mediku huts batetara mugatzen, gaixotasun bakoitzaren atzean errealitate bat aurkitzen baita. Familia oso batek bizi duen errealitatea, eta jasaten duen gaixotasuna. Eta hori izan da dokumental honetan islatu nahi izan duguna. Isilduak dira gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten presoen egoerak isilarazi nahi izan dituztelako. Euren eskubideak urratuak izaten ari direlako, eta hala ere isiltasun jarrera delako nagusi.

Guk isiltasun horrekin amaitu nahi dugu, eta gaixotasun larriak dituzten presoen eta euren senideen benetako egoera zein den azaldu nahi dugu. Eta egunero gure eta euren eskubideak urratuak izaten direla salatu nahi dugu. Dokumentalean hitzekin azaldu ezin diren sentimenduak sentitu ahal dira.

Dokumentala Etxerat elkartearen web orrian aurki daiteke, edo lotura honetan ere aurkitu daiteke: ***http://www.youtube.com/watch?v=xwNOd8jyi14&feature=channel&list=UL***



# BIZI OSORAKO ESPETXE ZIGORRA

Uztailaren 11n ezagutu genuen Europako Giza Eskubideen Auzitegiak 197/2006 doktrinaren aurka hartutako epaia; zehazki, Ines del Rio presoaren defentsak jarritako helegitearen inguruko ebazpena izan zen. Ebazpen hau Ines del Rioren kasura mugatzen bada ere, 197/2006 doktrinaren inguruko irakurketa bat egiten du, eta guk, senide eta lagunok, hainbestetan salatu dugun bizi osorako espetxe zigorraren aurka egiten du bertan.

Erabakiaren ondorioak argiak dira, eta Estrasburgoko Giza Eskubideen Auzitegiak bere erabakia azaldu du. 197/2006 doktrina aplikatuz presoen giza eskubideak urratzen ari dira, eta horregatik berehala desagertua izan behar du! Ebazpen hau euskal herritarrok lortutako garaipen bat izan da. Guztiok urteetan zehar egindako lanaren erakusle eta guzti horren ondorio zuzen. Horregatik, eskerrak eman nahi dizkiogu euskal gizarteari urte guzti hauetan gure senide eta lagunei, eta guri emandako babesagatik eta egindako lanagatik! Era berean, ezin dugu ahaztu ebazpena Ines del Rioren kasura mugatzen dela, baina, aldi berean 197/2006 doktrina bera guztiz baztertzen du. Beraz, orain Espainiako gobernuaren txanda iritsi da, eta guk doktrina aplikatuta duten gure senide eta lagunak berehala askatzeko exijitzen diogu. Nahikoa da! Euren bizitzarekin eta gurearekin jolasten jarraitzeko garaia amaitu da, eta jada beteta dugun zigorra luzatzen jarraitzeko aitzakiarik gabe gelditu dira. Gure senide eta lagunak gure alboan izan behar dute berehala, etxean egon behar dute.

Azken urteetan, 197/2006 doktrina izan da espetxe politika anker honen baliabide nagusia, eta guztion indarrarekin hau derogatzeko lehen pausua eman dugu. Baina, mendekuan oinarritutako politika honek salbuespeneko beste neurri batzuk ere ahalbidetzen ditu. Horregatik, hauekin ere amaitu behar da! Gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten presoak etxean egon behar dute, eta sakabanaketa politikarekin amaitu behar da!

**197/2006 doktrina aplikatuta duten presoen zerrenda**

***ESPETXEAN DOKTRINAREN ZIGORRA BETETZEN: 53***

• **OSCAR ABAD PALACIOS (Basauri. Topas):** 1991ean espetxeratua. Irteera data 2010eko abenduaren 31rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2021era arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

• **JON AGINAGALDE URRESTARAZU (Donostia. Granada):** 1984ean espetxeratua. Irteera data 2010eko uztailaren 4rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2014ra arte luzatu diote. 2012ko martxoan Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu zuen.

• **IÑIGO AKAITURRI IRAZABAL (Zornotza. A Lama):** 1991ean espetxeratua. Irteera data 2010ko apirilaren 15erako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2012ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu zuen.

• **JUAN CARLOS ARRUTI AIZPITARTE (Azpeitia. Cordoba):** 1989an espetxeratua. Irteera data 2009ko martxoaren 5erako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2019ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

• **JOSEBA ARTOLA IBARRETXE (Bilbo. Daroca):** 1986an espetxeratua. Irteera data 2006ko maiatzaren 18rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2016ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

• **LUIS MARI AZKARGORTA BELATEGI (Bergara. Zuera):** 1988an espetxeratua. Irteera data 2007ko urriaren 8rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2018ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

• **SANTOS BERGANZA ZENDEGI (Amurrio. Villena):** 1989an espetxeratua. Irteera data 2011ko ekainaren 15erako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2019ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

• **JOSE ANGEL BIGURI CAMINO (Menagarai. Martutene):** 1989an espetxeratua. Irteera data 2010eko ekainaren 9rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2019ra arte luzatu diote. 2012ko martxoan Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu zuen.

• **JESUS BOLLADA ALVAREZ (Barakaldo. Albocasser):** 1987an espetxeratua. Irteera data 2006ko maiatzaren 20rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2017ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

• **FERNANDO DEL OLMO VEGA (Bilbo. Almeria):** 1991ean espetxeratua. Irteera data 2012ko otsailerako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2020ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

• **INES DEL RIO PRADA (Tafalla. Curtis):** 1987an espetxeratua. Irteera data 2008ko uztailaren 5erako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2017ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu zuen.

• **JUAN IGNACIO DELGADO GOÑI (Legazpi. Topas):** 1991ean espetxeratua. Irteera data 2012ko otsailaren 19rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2012ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

• **JOSU DIAZ DE HEREDIA RUIZ DE ARBULU (Gasteiz. Topas):** 1986ean espetxeratua. Irteera data 2009ko urriaren 15erako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2016ra arte luzatu diote. 2012ko martxoan Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu zuen.

• **IÑAKI ERRO ZAZU (Iruñea. Almeria):** 1987an espetxeratua. Irteera data 2010eko maiatzaren 16rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2017ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu zuen.

• **JOSE ETXEBERRIA PASCUAL (Donostia. Daroca):** 1991ean espetxeratua. Irteera data 2010eko martxoaren 26rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2021ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

• **ELIAS FERNANDEZ CASTAÑARES (Bermeo. Villabona):** 1986an espetxeratua. Irteera data 2011ko maiatzaren 27rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2016ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

• **IÑAKI FERNANDEZ DE LARRINOA PEREZ DE LUKO (Gasteiz. Puerto I):** 1989an espetxeratua. Irteera data 2008ko urrirako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2019ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu zuen.

• **NICOLAS FRANCISCO RODRIGUEZ (Lasarte. Herrera de la Mancha):** 1987an espetxeratua. Irteera data 2009ko maiatzaren 26rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2017ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu zuen.

• **JUAN MARI GABIRONDO AGOTE (Itziar. A Lama):** 1986an espetxeratua. Irteera data 2007ko abenduaren 1erako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2016ra arte luzatu diote. 2012ko martxoan Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu zuen.

• **ISIDRO GARALDE BEDIALAUNETA (Ondarroa. Puerto I):** 1985ean Frantzian espetxeratua, 7 urteko zigorrarekin. 1990an aske utzi zuten eta, urte berean, espetxeratua eta espetxeratua berriro Frantzian. 1992ean Espainiara estraditatua. 2010ko otsailaren 2rako zuen irteera data, baina 2009ko abenduan, Entzutegi Nazional espainiarreko fiskaltzak 197/2006 doktrina aplikatzea eskatzen du. Irteera data 2020ean utzi dute. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ez du tramitera onartu.

• **XABIER GOLDARAZ ALDAIA (Mugiro. Zuera):** 1992an espetxeratua. Irteera data 2011ko irailaren 17rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2022ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

• **PATXI GOMEZ LOPEZ (Ortuella. Basauri):** 1989an espetxeratua: Auzitegi Gorenako 197/2006 sententziaren irizpidea aplikatuz, Patxi Gomez 2018rarte ez askatzea erabaki du Espainiako Auzitegi Nazionalak. 2006ko ekainaren 14ean askatu behar zuten Patxi, eta kaleratze data 2018ko irailaren 19ra atzeratu diote, 30 urteko zigorra osorik bete arte. 2009-04-29an kaleratu zuten, kondena 20 urtetan ezarriz. 2009ko abenduan, ebazpen horren aurka, Auzitegi Gorenak 30 urtetan ezarri zion zigorra, beste 10 urtez kondena luzatuz. 2012ko otsailaren 9an berriro atxilotzen dute geratzen zaizkion urteak betetzeko. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

• **RAUL IBAÑEZ DIEZ (Basauri. Dueñas):** 1991ean espetxeratua. Irteera data 2010eko urriaren 8rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2021ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu zuen.

• **JUAN JOSE LEGORBURU GEREDIAGA (Zornotza. Albocasser):** 1986ean espetxeratua. Irteera data 2009ko apirilaren 2rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2016ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

• **GOTZONE LOPEZ DE LUZURIAGA FERNANDEZ (Agurain. Martutene):** 1989an espetxeratua. Irteera data 2010eko abuztuaren 11rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2019ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu zuen.

• **ANTXON LOPEZ RUIZ (Elorrio. Puerto I):** 1987an espetxeratua. Irteera data 2006ko uztailaren 24rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2017ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

• **FRANCISCO LUJANBIO GALDEANO (Hernani. Herrera de la Mancha):** 1984ean espetxeratua. Irteera data 2008ko otsailaren 17rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2014ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu zuen.

• **JOSE RAMON MARTINEZ DE LA FUENTE INTXAURREGI (Gasteiz. Logroño):** 1985an espetxeratua. Irteera data 2009ko urtarrilaren 1erako bazuen ere, 197/06 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2020ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu zuen.

• **JABI MARTINEZ IZAGIRRE (Usansolo. Jaen):** 1992ean espetxeratua. Irteera data 2010eko irailaren 22rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. zigorra 2022ko Maiatzaren 5ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

• **ITZIAR MARTINEZ SUSTATXA (Galdakao. Topas):** 1991ean espetxeratua. Irteera data 2009ko ekainaren 4erako zuen, baina 197/2006 doktrina aplikatu zioten. Zigorra 2021ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu zuen.

• **JESUS MARI MENDINUETA FLORES (Arbizu. Zuera):** 1991ean espetxeratua. Irteera data 2011ko Maiatzaren 4rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2021ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

• **INMACULADA NOBLE GOIKOETXEA (Hernani. Algeciras):** 1987an espetxeratua. Irteera data 2008ko azaroaren 8rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2017ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

• **PEIO ODRIOZOLA AGIRRE (Tolosa. Zuera):** 1988ean espetxeratua. Irteera data 2008-07-02an zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2018ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

• **IÑAKI OROTEGI OTXANDORENA (Lasarte. Zuera):** 1986ean espetxeratua. Irteera data 2008ko abenduak 17an zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2016ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu zuen.

• **IMMA PACHO MARTIN (Bilbo. Malaga):** 1991ean espetxeratua: irteera data 2008-03-11rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2021ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu zuen.

• **JUAN MANUEL PIRIZ LOPEZ (Portugalete. Algeciras):** 1984an espetxeratua. Irteera data 2009ko Martxoan zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2014ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

• **IÑAKI PUJANA ALBERDI (Otxandio. Villena):** 1987an espetxeratua. Irteera 2009ko Otsailaren 23rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2021ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu zuen.

• **KEPA REZABAL ZURUTUZA (Lasarte-Monterroso):** 1987an espetxeratua. Irteera 2006ko abenduren 30erako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2016ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

• **MAITANE SAGASTUME ARRIETA (Donostia. Curtis):** 1991an espetxeratua. Irteera 2009ko Uztailaren 26rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2021ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu zuen.

• **JOKIN SANCHO BIURRUN (Iruñea. Zuera):** 1989an espetxeratua. Irteera 2009ko Abenduaren 8rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2019ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

• **KEPA SOLANA ARRONDO (Legazpi. Bonxe):** 1991an espetxeratua. Irteera 2009ko Urriaren 10ean zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2021ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu zuen.

• **TXOMIN TROITIÑO ARRANZ (Donostia. Curtis):** 1987an espetxeratua. Irteera 2006ko maiatzaren 5erako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2017ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

• **ANTTON TROITIÑO ARRANZ (Donostia. Belmarsh):** 1987an espetxeratua. Irteera 2011-02-04rako zuen. Baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2017ra arte luzatu zioten.

• **MITXEL TURRIENTES RAMIREZ (Lasarte. Herrera de la Mancha):** 1986ean espetxeratua. Irteera 2009ko apirilaren 10rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2016ra arte luzatu diote.

• **JOKIN URAIN LARRAÑAGA (Mendaro. Herrera de la Mancha):** 1986ean espetxeratua. Irteera 2009ko abuztuaren 29rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2016 ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

• **IÑAKI URDIAIN ZIRIZA (Barañain. Valencia III):** 1989ean espetxeratua. Irteera 2009ko Urriaren 9an zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2019ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

• **JON ANDER URKIZU ORMAZABAL (Pasai San Pedro. Teruel):** 1986an espetxeratua: irteera 2007ko uztailaren 22rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2016ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

• **MARITXU UZKUDUN ETXENAGUSIA (Errezil. Granada):** 1991ean espetxeratua. Irteera 2009ko abuztuaren 27rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2021ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

• **JOSE FELIX ZABARTE JAINAGA (Elorrio. Puerto III):** 1985an espetxeratua. Irteera 2008ko apirilaren 11rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2015ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

• **GONZALO RODRIGUEZ CORDERO (Ezkio-Itxaso. Herrera de la Mancha):** 1993ean espetxeratua. Irteera data 2013ko uztailaren 11rako du, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2023ra arte luzatu diote.

• **IÑAKI ZUGADI GARCIA (Barakaldo. Murcia II):** 1992an espetxeratua. Irteera data 2012ko apirilaren 30erako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2022ra arte luzatu diote.

• **JUAN JOSE ZUBIETA ZUBELDIA (Lekunberri. Monterroso):** 1991ean espetxeratua. Irteera data 2012ko apirilaren 30erako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2021ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak tramitera onartu du.

• **JOSUNE ONAINDIA SUSAETA (Barakaldo. Murcia II):** 1992an espetxeratua. Irteera data 2012ko ekainaren 9rako zuen, baina urte bereko maiatzean 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2022ra arte luzatu diote.

## *DOKTRINA EZARRITA IRTEERA FINKATU AURRETIK: 14*

• **JOSU AMANTES ARNAIZ (Bilbo. Bonxe):** 1992an espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. 2012an Epaitegi Konstituzionalak tramitera onartu zuen.

• **IÑAKI ARAKAMA MENDIA (Gasteiz. Sevilla II):** 1997an espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. 2012ko maiatzean, Konstituzionalak, defentsak eskatutako Doktrinaren suspentsioa ukatu zion.

• **SANTIAGO ARROZPIDE SARASOLA (Lasarte. Zuera):** 1987an espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten.

• **JOSE MARIA BERISTAIN URBIETA (Itziar. Puerto III):** 1989an espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten.

• **OSKAR CADENAS LORENTE (Donostia. Murcia II):** 1996an espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten.

• **JORGE GONZALEZ ENDEMAÑO (Portugalete. Mansilla):** 1995ean espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

• **MANU GONZALEZ RODRIGUEZ (Laudio. Sevilla II):** 1989an espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Epaitegi Konstituzionalak ez du tramitera onartu.

• **UNAI PAROT NAVARRO (Baiona. Puerto III):** 1990ean espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten.

• **LURDES TXURRUKA MADINABEITIA (Soraluze. Huelva):** 1994ean espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

• **JOSE JAVIER ZABALETA ELOSEGI (Hernani. Zuera):** 1990ean espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

• **ASIER ORMAZABAL LIZEAGA (Hernani. Teruel):** 1997ean espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Irteera datarik ez diote finkatu.

• **GERMAN RUBENACH ROIZ (Iruñea. Puerto III):** 1990ean espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Irteera datarik ez diote finkatu.

• **ALBERTO PLAZAOLA ANDOAGA (Oñati. Curtis):** 1990ean espetxeratua. Irteera data 2016ko azaroaren 26rako zuen, baina 2012an 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2026ra arte luzatu diote.

• **GABRIEL ZABALA ERASUN (Pasai San Pedro. Villabona):** 1993ean espetxeratua. Irteera data 2013ko irailaren 27rako bazuen ere, Audientzia Nazionalak 2023ko urriaren 17ra arte luzatu dio. Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatsi.

## KALEAN (Doktrina ezarrita baina Doktrinaren zigorra bete gabe): 3

• **ANDER MITXELENA (Oiartzun):** 2001tik baldintzapeko askatasunean dago. 2008ko Otsailaren 25ean bukatzen zuten zigorra, baina 197/2006 Doktrina aplikatu zioten 2014 arte.

• **BAUTISTA BARANDALLA IRIARTE (Iruñea):** 1990ean espetxeratua. Irteera data 2009-06-30rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2020ra arte luzatu diote. Bere gaixotasuna dela eta 2009an kaleratu zuten, kontrol neurriekin etxean. 2012an Epaitegi Konstituzionalak tramitera onartu zuen.

• **INAXIO MENDIBURU ITURRAIN (Oiartzun):** 1984ean espetxeratua. 2014ko ekainera arte luzatu zioten zigorra. 2009Ko maiatzean 197/2006 Doktrina aplikatu zioten. 2012ko martxoan Epaitegi Konstituzionalak tramitera onartu zuen.

## KALEAN (Doktrinaren zigorra beteta): 15

• **KANDIDO ZUBIKARAI BADIOLA (Ondarroa):** 1989an espetxeratua. 2006ko urriaren 26an askatu behar zuten , baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2011ra arte luzatu zioten.

• **JOSE MARIA SAGARDUI MOJA (Zornotza):** 1980ean espetxeratua. Irteera 2009ko abuztuaren 20rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2011ra arte luzatu zioten.

• **JON AGIRRE AGIRIANO (Aramaio):** 1981an espetxeratua. Irteera 2006ko urriaren 28rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2011ra arterte luzatu zioten.

• **JUAN CARLOS PEREZ OJUEL (Iruñea):** 1990an espetxeratua. Irteera data 2008-04-16rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. 2009ko abuztuaren 19ra arte luzatu zioten.

• **FERNANDO ETXEGARAI GAZTEARENA (Plentzia):** 1987an espetxeratua. 2008 urtarrilaren 43ean kaleratua izan zen, baina urte bereko apirilean berriro atxilotu zuten zigorra 25 urte arte luzatuz. Urte bereko maiatzean berriz, epaileak 20 urtetan finkatzen du bere aurkako zigorra, eta kalera atera zuten.

• **ANTXON GARCIA DEL MOLINO (Ordizia):** irteera 2010eko abuztuarako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2011ra arte luzatu zitoen.

• **TXERRA MARTINEZ GARCIA (Basauri):** 1991an espetxeratua. Irteera 2006ko abuztuaren 24rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2011ra arte luzatu zioten.

• **ESTANIS LOPEZ AGIRIANO (Oiartzun):** 1986an atxilotua. 2011ko maiatzaren 10ean kaleratu zuten.

• **ANDER ERRANDONEA ARRUTI (Oiartzun):** 1986an atxilotua. 2011ko maiatzaren 10ean kaleratu zuten.

• **JUAN MARIA IGARATAUNDI PEÑAGARIKANO (Zestoa):** 1987an atxilotua. Irteera data 2009rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2017-06-06 arte luzatu zioten, baina Epaitegi Konstituzionalak 2012an, bere kasuan Doktrinaren etenduraz baiezkoa erabaki zuen, eta kaleratu zuten.

• **JOSE IGNACIO GAZTAÑAGA BIDAURRETA (Arrasate):** 1988an espetxeratua. Irteera 2006ko martxoaren 29rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2018ra arte luzatu zioten, baina Epaitegi Konstituzionalak 2012an, bere kasuan Doktrinaren etenduraz baiezkoa erabaki zuen, eta kaleratu zuten.

• **JOSE MARI PEREZ DIAZ (Zarautz):** 1987an espetxeratua. Irteera 2008ko abenduaren 15erako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2017ra arte luzatu zioten, baina Epaitegi Konstituzionalak 2012an, bere kasuan Doktrinaren etenduraz baiezkoa erabaki zuen, eta kaleratu zuten.

• **PEIO ETXEBERRIA LETE (Soraluze):** 1989an espetxeratua. Irteera data 2006ko irailaren 10erako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2019ra arte luzatu diote. 2012ko maiatzean, Konstituzionalak bere kasuan Doktrinaren etenduraz baiezkoa erabaki zuen, eta kaleratu zuten.

• **MARIO ARTOLA MENDIBE (Donostia):** 1992an espetxeratua. Irteera data 2012ko apirilaren 17rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2022ra arte luzatu diote. 2012ko Ekainaren 5ean, Audientzia Nazionalak bere kasuan Doktrina ez aplikatzea erabaki zuen, eta egun berean askatu zuten.

• **FERNANDO DIEZ TORRE (Bilbo):** 1992an espetxeratua. Irteera data 2011ko maiatzaren 30erako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2022ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi. 2012ko uztailean, Epaitegi Gorenak aske utzi zuen.



# 3. ZIGORRAREN 2/3 ETA 3/4 BETETA DITUZTEN PRESOAK

Egun 150 euskal preso politikok zigorraren 2/3ak edo 3/4ak beteta izateagatik baldintzapeko askatasunari esker kalean beharko lukete, eta hala ere espetxeraturik mantentzen dituzte. Beste behin Euskal Preso Politikoei salbuespeneko neurriak ezartzen zaizkiela ikus daiteke. 150 pertsonek urteak daramatzate espetxean eta zigorraren 2/3 eta 3/4ak beteta baldintzapeko askatasunean beharko lukete, baina espetxean jarraitzen dute. Hona hemen aske beharko luketen presoen zerrenda:

ABAD SAN PEDRO ENDIKA
AGIRRE LETE JUAN LUIS
ALMARAZ LARRAÑAGA AGUSTIN
ALONSO ALVAREZ RAUL
ALONSO CURIECES ANUNTZI
ALONSO RUBIO IÑAKI
APARICIO BENITO JON KOLDO
APEZTEGIA JAKA JOXE KARLOS
ARANBURU MUGURUZA XABIER
ARISTI ETXAIDE PATXI
ARKAUZ ARANA JOSU
ARREGI ERROSTARBE JOSEBA
ARRIAGA ARRUABARRENA RUFINO
ARRIETA ISMAEL
ASENSIO MILLAN PAUL
ASKASIBAR GARITANO MIKEL
BALANZATEGI AGIRRE XABIER
BALERDI IBARGUREN XABIER
BALERDI ITURRALDE JUAN CARLOS
BEASKOA RODRIGEZ JON
BEAUMONT BARBERENA JOSU
BELLON BLANCO ARKAITZ
BELOKI RESA ELENA
BENAITO VILLAGARCIA MIGUEL ANGEL
BETOLAZA VILAGRASA GORKA
BILBAO BEASKOETXEA IÑAKI
CABELLO PEREZ ANDONI
CAÑAS CARTON IÑAKI
CASTRO SARRIEGI ALFONSO
DORRONSORO MALAXETXEBARRIA JOSE MARIA
EGIGUREN ENBEITIA OLATZ
ERNAGA ESNOZ JOSEPA
ERRAZTI ELORZA JOKIN
ESNAL JUANTXU
ESTONBA ITURRIZA ARATZ
ETXEANDIA MEABE JOSE MIGUEL
ETXEBARRIA MARTIN IÑAKI
ETXEGARAI MENDIGUREN MARTIN
FAGOAGA IGANTZI IÑAKI
FERNANDEZ BERNALES JULEN
GABIOLA GOIOGANA ANDONI
GALARZA QUIRCE LUIS ANGEL
AÑAN RAMIRO GAIZKA
GARAIZAR SAN MARTIN NEREA
GARCIA MIJANGOS JOSE
GARCIA RAZKIN SERGIO
GARCIA SERTUTXA GORKA
GOIENETXE ALONSO IÑAKI
GOMEZ LARRAÑAGA ARATZ
GONZALEZ RODRIGUEZ MANUEL
GONZALO CASAL IÑAKI
GRAMONT DABID
GUEMES OIARBIDE ITXASO
GUNDIN MAGUREGI PATXI
HIDALGO LERTXUNDI AIMAR
IPARRAGIRRE ARRETXEA IMANOL

IRASTORZA OTEGI AINHOA
JUARISTI ARRIETA XABIN
CORTA CARRION MIKEL
LARRINAGA MARTIN JULEN
LARRINAGA RODRIGUEZ ASIER
LASA MITXELENA JUAN LORENZO
LEGAZ IRURETA ARMANDO
LESENDE ALDEKOA TXOMIN
LIGUERZANA AJURIAGERRA AITOR
LOIZAGA LOINAZ IÑAKI
LOPEZ DE ABETXUKO LIKINIANO JOSE RAMON
MAJARENAS IBARRETA SARA
MARKEZ DEL FRESNO KEPA
MARTINEZ PEREZ LEIRE
MUJIKA GARMENDIA FRANCISKO
OIARTZABAL UBIERNA ANARTZ
OLAIZ RODRIGUEZ JORJE
OLANO OLANO JUAN MARIA
ORMAZABAL GAZTAÑAGA JON MARKEL
OTAZUA URRESTI IÑIGO
PEREZ DE ANUNCITA URKIJO EDUARDO PABLO
PRIETO JURADO SEBASTIAN
ROJO GONZALEZ JUAN RAMON
RUIZ JASO ZIGOR
SADABA MERINO FRANCISCO JAVIER
SAEZ ARRIETA ARKAITZ
SALEGI GARCIA OROITZ
SAN EPIFANIO SAN PEDRO FELIPE
SOLA TORRES JOSE DOMINGO
TAPIA ZULAIKA ASIER
TERRONES ARRETE JAGOBA
TOBALINA RODRIGUEZ JUAN
TODA IGLESIA TERESA
TXIMENO INZA XABIER
UGALDE ZUBIRI ANDONI
UGARTE VILLAR XABIER
URIBE NAVARRO RAMON
URIZAR DE PAZ GERMAN
URIZAR MURGOITIO JOSE GABRIEL
URRA GURIDI KEPA
VIRUMBRALES AMENABAR ASIER
ZABARTE ARREGI JESUS MARI
ZARRABE ELKOROIBIDE MIKEL
ZELARAIN ERRAZTI JULEN
ZELARAIN OIARTZABAL PEIO
ZIGANDA SARRATEA JOSU
ZUBIA URRUTIA IKER
ZUBIZARRETA BALBOA KEPA
ZULAIKA AMUTXASTEGI GORKA
ARREGI IMAZ XABIER
ASKASIBAR BARRUTIA BIXENTE
BEROIZ ZUBIZARRETA ANDONI
BRAVO MAESTROJUAN JOSU
COLOMA UGARTEMENDIA ASIER
ESKISABEL BARANDIARAN ANITZ
ESPARZA ORTEGA JOSEBA
HERNAEZ BOLINAGA AILANDE
GANDIAGA IBARZABAL ESTEBE
GAZTELU OTXANDORENA JOSE MIGUEL
GONZALEZ PAVON JOSEBA
IBARRA IZURIETA BIGARREN
LEJARZEGI OLABARRIETA ENDIKA
LIZARRALDE PALACIOS ANA
OLARRA AGIRIANO JOXE MARI
OSTOLAZA IKARAN ENEKO
PASCUAL MUNETA GARIKOITZ
SAENZ OLARRA BALBINO
SALUTREGI MENTXAKA JABIER
TRENOR DICENTA KARLOS
VARGAS OLASOLO MIKEL
ZUBIMENDI IZAZA ARAITZ
ZENARRUZABEITIA IRUGUENPAGATE ZALOA
ZALAKAIN GARAIKOETXEA JESUS MARIA
ZUBIAGA LAZKANO XEBER

***FRANTZIAR ESTATUA***

FREDERIK HARANBURU
INIGO ELIZEGI
JACKES ESNAL
JUAN CARLOS ESTEVEZ PAZ
AITOR KORTAZAR
MAITE JUARROS
JON KIRRU OTXOANTESANA
JON PAROT
IÑAKI REGO
RAMUNTXO SAGARZAZU
BEÑAT SANSEBASTIAN
PEIO ALCANTARILLA
MARINA BERNADO BONADA
MIKEL ALMANDOZ
MATTIN OLZOMENDI
GALDER CORNAGO
ITXASO LEGORBURU
IBAI SUESKUN
JEAN MARIE SAINT PEE



# GERTAERA LARRIAK

## Presoekiko eraso fisikoak

**Villefranse sur Sâone**

Ruben Ribero, Julen Mujika eta Ibon Goieaskoetxeak funtzionarioen jipoi bortitzak jaso zituzten, uztailaren 1ean. Jipoiaren nondik norakoak aztertuz gero, senideok asteburuuro jasaten ditugun arazoetako batekin topatzen gara. Izan ere, jipoiaren aurreko egunean Julen Mujikaren senideak, bera ikusteko 800 kilometro inguruko bidaia egin ondoren, eta bisitara sartzera zihoazenean, arkutik pasa behar izan zuten eta honek soinua atera zuenez bisita burutu gabe geratu behar izan zuten. Arrazoi honegatik, hurrengo egunean bertan, Villefranche sur Sâonen aurkitzen diren hiru euskal presoek planto bat egitea erabaki zuten patioan, ziegetara sartzerakoan. Funtzionarioek hau ikustean, makil eta guzti izugarrizko jipoia eman zieten hirurei, gerora zigor ziegan Ibon Goieaskoetxeari beste bat eman ziotelarik.

**Foncalent**

Aitor Liguerzana presoak Foncalenteko espetxean preso sozial baten erasoa pairatu zuen uztailaren 5ean. Gertakariak goizeko 10:30ak aldera jazo ziren, presoek dutxetara sartzeko ilara egiten ari ziren bitartean. Une horretan, preso arrunt batek Aitor Liguerzana puntzoi batekin erasotu zuen. Eraso bortitza izan zen, hiru edo lau aldiz errepikatu baitzen, eta odoletan zegoela ikusita Aitor erizaintzako zerbitzuen beharra izan zuen. Zauriak sendatu eta antitetanikoaren txertoa jaso ondoren, 10 ordu espetxeko erizaintza zerbitzutan igaro ondoren bere ziegara itzuli zen.

Foncalenteko erasoa preso sozial batek gauzatu zuen. Baina, erasoa beste preso baten aginduz gauzatu zuen. Zorionez Aitor ondo dago, baina ondorioak benetan larriak izan zitezkeen. Foncalenteko espetxean tentsio une handiak bizi dituzte, eta 6. moduluan aurkitzen diren gure senide eta lagunek mehatxuak eta irainak jasan behar izan dituzte. Erasoa ere ez zen gertakari isolatu bat izan, aurretik erabaki eta antolatutako zerbait izan zen. Euskal presoek lehenago zuzendaria ohartarazi zuten modulu horretan bizi zen tentsioaz eta arriskuez, eta bertan dauden euskal preso politiko guztiak modulu batean elkartzeko eskatu zuten, baina presoek ezezkoa jaso zuten.

## Gose grebak

Uztailaren 17an afalorduan liskar bat izan zuten Manex Castro eta Sergio Polo euskal preso politikoek, beste preso sozial batzuekin. Liskarraren unean tentsio uneak bizi izan ziren, eta liskarra hasi zuen preso soziala lehenik, eta Manex Castro eta Sergio Polo ondoren, isolamendura eraman zituzten. Bi euskal preso politikoak isolamenduko modulura eraman zituztenean, miatu egin nahi izan zituzten, eta ez zutenez onartu nahi, une horretan ere liskarra izan zuten funtzionarioekin. Orain Castro eta Polo isolamenduan aurkitzen dira.

Liskarra gertatu zen unean, Eduardo Perez ez zen bertan aurkitzen. Eta liskarraren ondoren bere kideak bertan ez zeudela ohartu zenean, funtzionarioen bere bi kideengatik galdetu zien. Erantzunik jaso ez zuenez, planto bat burutzea erabaki zuen bere kideen egoeraren berri izan arte. Orduan, funtzionarioek bortizki igo zuten ziegara, lepotik helduta eta arrastaka eraman baitzuten. Egoera honen aurrean eta kideen inguruko informaziorik ez izatean, Eduardo Perezek gose greba bat hastea erabaki zuen. Bi egun beranduago Manex Castro eta Sergio Polo ere gose greban sartu ziren, Eduardo Perezi euren elkartasuna adierazteko, eta era berean hirurek egun duten egoera konpontzeko. Uztailaren 21ean gose greba bertan behera uztea erabaki zuen Eduardo Perezek, eta bi egun beranduago utzi zuten gose greba Castrok eta Polok ere. Egun hirurak modulu berdinean daude.

Picassent espetxean orokorrean tentsio handiko giroa nabari da, eta euskal preso politikoekiko jarrera probokatzaileak etengabeak izaten ari dira.

## Sakabanaketak eragindako istripuak

**Ekainak 13**
Ekainaren 13an Maite Aranalde euskal presoaren gurasoek sakabanaketak eragindako aurtengo zortzigarren istripua jasan zuten. Ekainaren 13an, Poitiers Vivonne espetxean bisita izan ondoren, etxera itzultzen ari zirela, Vivonne eta Angoulême arteko errepidean, kamio bat aurreratzera zihoazela errepideko erdibitzailaren aurka jo zuten. Zorionez, Aranalderen gurasoak ondo daude.

**Abuztuak 4**
Abuztuaren 4an, Murtziako espetxetik Euskal Herrira bueltan, senide eta lagunak zeramatzan furgonetak istripua izan zuen, 21:30ak inguruan.

Ezbeharra Segovia inguruan gertatu zen, gasolindegi batean. Gasolindegira sartzera zihoazela, kamioi handi bat atzeraka abiatu zen eta furgoneta jo zuen. Senide eta lagunak zeramatzan furgonetan Mirentxinena zen, asteburuoro milaka kilometro egiten dituzten furgonetetako bat senide eta lagunok gure gertukoak ikustera eramaten gaituztenak. Ezbeharra gertatu zenean furgonetan bi gidari, Ventura Tomeren alaba, Peio Olanoren lagun bat, Jon Troitiñoren lagun bat, eta Mikel Izpuraren bikotea eta 10 urteko semea zeuden. Hau da, zazpi pertsona zeuden furgonetan; horietako bat adin txikikoa. Zorionez denak ondo daude, baina furgonetak kalte materialak izan zituen.

**Abuztuak 7**
Mikel Egibar euskal presoaren bikoteak eta seme-alabek istripu larri bat pairatu zuten abuztuaren 7an, bisitatik etxera zihoazela. Mikel Egibar zizurkildarra da eta Zuerako espetxean aurkitzen da egun. Istripua

eguerdian gertatu zen, Zaragoza inguruan. Kamioi batekin izan zuten istripua eta suhiltzaileek atera behar izan zituzten autotik.

Hirurak ospitalera eraman zituzten. Bikotea eta hamalau urteko semea Zaragozako Klinikan egon ziren ospitaleratuak; eta hamabi urteko alaba Miguel Servet ospitalera eraman zuten. Egibarren hamabi urteko alaba, abuztuaren 11n ekarri zuten Miguel Servet Ospitaletik Donostiako Ospitalera. Bertan, bizkarreko bosgarren ornoa zanpatua eta lekuz mugitua zuenez, "korsea" jarri zioten eta lau hilabetez immobilizatua egon behar du. Bitartean Ospitaleko tratamendua jaso eta errebisioak egin beharko dizkiote bere zaurien garapena ikustatzeko. Errekuperazioa luzerako izango du. Alta medikoa abuztuaren 21ean jaso zuen.

Egibarren hamalau urteko semeak, berriz, humeroa hautsia du eta ebakuntza abuztuaren 16ean egin zioten. Ebakuntzaren emaitzak onak izan dira. Abuztuaren 14an ekarri zuten Zaragozako Klinikatik Donostiako Ospitalera. Alta medikoa abuztuaren 22an jaso zuen, nahiz eta tratamenduan jarraitu eta errebisio medikoak egin behar dizkioten. Berak ere errekuperazioa luzerako izango du.

Azkenik, kotxe istriputik kaltetuen atera zena, Mikel Egibarren emaztea, Donostiako Ospitaleko plantan aurkitzen da. Abuztuaren 20an ekarri zuten Zaragozako Miguel Servet Ospitaletik, non ZIU-ko eremuan aurkitzen zen zainketa berezietan. 13 egun igaro zituen Zaragozako Miguel Servet Ospitaleko Harrera Berezietako Unitatean. Medikuen esanetan, bere osasunaren garapena hobera egiten ari da, nahiz eta ospitalean denbora luzea eman beharko duen. Antibiotikodun tratamendua du, errehabilitazioa egin beharko du eta masailean ebakuntza egin behar diote.

**Abuztuak 11**

Euskal Herritik 462 kilometrora aurkitzen den Frantziako Uzerche-ko espetxean bakarturik dagoen Mattin Olzomendi preso politikoaren bikotea eta lagun batek istripua izan zuten abuztuaren 11n bisitatik bueltan zetozela.

Istripua, Bordele herriko errotonda batean izan zuten. Kotxe erretentzio batean zeudenean, atzetik beste kotxe batek kolpatu zituen eta ondorioz kotxeak kalte materialak izan zituen. Zorionez, Olzomendiren bikotea eta laguna ondo aurkitzen dira.

## Sutea

**Liancourt**

Liancourt espetxean aurkitzen dira Jon Etxeberria, Mikel Oroz eta Iban Saez de Jauregi euskal preso politikoak. Uztailaren 14an, ziega batean sute berri bat izan zen Liancourt espetxean. Gogoratu behar da 2011ko azaroaren 4ean ere, beste sute bat gertatu zela espetxe berean.

Hiru euskal preso politikoak ongi dauden arren, sutea piztu zenean, 21:00etan, txirrina jo arren ez zen inor agertu eta ziegak ez zituzten hustu. Su hartu zuen gaineko ziegak ere ez zituzten 22:30ak arte hustu.

Hiru euskal presoak espetxeko arduradunarekin bildu dira gertatutako salatzeko, eta espetxeko zuzendariari eta zenbait eragileri gutunak bidaltzeko asmoa dute egoeraren berri emateko.

**Mansilla de Mulas**

Abuztuaren 12an sute bat izan zen Leongo Mansilla de Mulas espetxean. Bertan bi euskal presoren senideak zeuden bisitetan; batetik, Arkaitz Landaberearen senideak, euren artean presoaren lau hilabeteko iloba, eta bestetik Iker Araguas presoaren bikotea. Iker Araguas eta bere bikotea aurrez aurreko bisitan zeudela, beste gela batzuetatik oihuak eta kolpeak entzun zituzten, eta bat-batean ate azpitik kea sartzen zela konturatu ziren. Estutasun handia bizi izan zuten, eta hogei minutuz egon behar izan zuten egoera horretan, azkenik atera zituzten arte. Suhiltzaileek beharrezko arropa, oxigeno maskara eta linternekin bisetako ateak banan-banan zabaldu zituzten, eta eskutik helduta pasilloan arnasa hartu gabe korrika banan-banan atera zituzten. Kartzelako patio batean elkartu zituzten senide guztiak, bis intimoetan eta familiarretan zeuden guztiak. Ordurako anbulantziak bertan ziren eta 14 pertsona eraman behar izan zituzten.

## Bisitak gauzatzeko arazoak

**Martutene**

Abuztuaren 18an, Jose Angel Biguri presoak eta bere senideek arazoak izan zituzten kartzelako funtzionarioekin. Biguriren amak 82 urterekin, izebak 76 urterekin eta beste bi senidek bis familiarra burutu behar zuten. Hasiera batean, Biguri eta bere senideak bis a bisa egiteko gelan elkartu ziren. Orduan, funtzionario bat gerturatu zitzaien, gelaz aldatu behar zutela esanez, Biguri lehen graduan zegoela eta beste gela bat zegokiela, non komunikazioa interbenituta eta grabatua behar duen izan. Bigurik erantzun zion hirugarren aldia zela gela hura eskatzen zutela, bere amak mugitzeko dituen zailtasunengatik (bisitetarako beste gelak goiko solairuan daude eta Biguriren amak ez du bertara igotzeko gaitasunik). Orain arte bisita gela hau erabiltzeko aukera izan dute eta ez dute inolako arazorik izan funtzionarioen aldetik.

Funtzionarioarekin eztabaidatu ondoren, zerbitzu buruarekin egoteko aukera izan zuten. Honek hiru aukera posible zituztela esan zien Biguri eta bere senideei; Biguriren ama bis a bisera ez sartzearena (goiko gelan burutzea, alegia), bisita hura beste egun batean burutzea (senideek 160 kilometro egin behar izan dituzte Martuteneko espetxeraino), edota bis a bisa egin beharrean bisita normala egitea. Kartzelarien jarrera itxia ikusirik, Bigurik eta bere senideek bisita normala egitea erabaki zuten (aurrez aurrekorik gabe geratu ziren).

Behin bisita normalaren gelan zeudela, funtzionario batek berriro ere gelaz aldatzeko esan zien, elkarrizketak grabatzeko zinta amaitua zegoelakoan. Egoera honen aurrean, zerbitzu arduradunarekin beste eztabaida bat izan zuten, funtzionarioen lekuz kanpoko jarreraren ondorioz. Abuztuaren 21ean, espetxeak Jose Angel Biguri presoari jakinarazi dio 76 urteko bere izebak hiru hilabetetan ezingo duela inolako bisitarik burutu berarekin.

**Iruñea**

Iñaki Erro euskal presoa Iruñeko espetxean egon da bere amaren osasun egoera larria dela eta. Espetxe honetan eman duen denboran arazo ugari izan ditu. Izan ere, momentu oro ingresotan mantendu dute, eta egoera zail honen aurrean senideekin komunikatzeko arazo handiak izan ditu: ez zioten deirik egiten uzten, aurrez aurreko bisita bat galdu zuen... Gainera, espetxeko bizi baldintzak ere eskasak izan ziren, bera patiora ateratzea ere ahazten zitzaielarik funtzionarioei.

Iruñean zegoen bitartean ama hil aurretik behin bisitatu ahal izan zuen ama, ordubetez. Hurrengo egunean Erro Iruñetik atera zuten egunean, ama hil egin zen. Erro Logroño parean zegoen eta leku aldatzea gelditu ahal izan zuen, berriro ere Iruñera eraman zutelarik eta amaren errausketan eta hiletan egon ahal izan zuelarik. Espetxean ez bezala, errausketan eta hiletan Errorekiko tratua egokia izan zen.

Bereziki salagarria da gaixotasun larri bat duen preso batekin honelako jarrera izatea espetxeak bere amaren heriotzaren aurrean. Izan ere, ezin da ahaztu Errok kardiopatia iskemiko larria duela, eta egoera krudel hau bizi behar izatea ez da batere egokia gaixotasun hori duen pertsona batentzat.

## Isolamendua eta bakartzea

Bakartze edo isolamenduaren aplikazio zorrotza euskal preso politikoen bereizgarri bat da. Isolamendua edo bakartzea egoera oso zehatzetara zuzendutako neurria bada ere, espetxe arautegian (zigor puntual gisako neurritzat hartzen dena), gure senide eta lagunen kasuan ohiko edota behin-betiko neurri gisa aplikatzen da. Esan bezala, euskal presoen kasuan isolamendua edo mitarda maiz ezartzen den zigor bat da. Baina zenbait kasutan presoak agian isolamenduko moduluan egon ez arren bakarrik egoten dira, hau da, beste kiderik edo euskal preso politikorik gabe egoten dira, eta kasu hauetan bakartuak daudela esaten da. Hona hemen momentu honetan Espainiako eta Frantziako espetxeetan bakarturik dauden preso politikoen zerrenda:

**Euskal Herria**
Txus Martin (Zaballa)
Gotzone Lopez de Luzuriaga (Martutene)
Jose Angel Biguri (Martutene)

**Espainiar Estatua**
Oskar Zelarain (Alcala Meco)
Sara Majarenas (León)
Dani Pastor (Puerto III – isolamendua)

**Frantziar Estatua**
Jean Marie Saint Pee (Mont de Marsan)
Juan Carlos Estevez (Toulon)
Marian Aramendi (Joux la Ville)
Julen Eizagirre (Joux la Ville)
Mattin Olzomendi (Uzerche)
Juan Mari Mujika (Muret Sysses)



# BESTELAKO GERTAERAK

***Espainiar estatua***

**Brieva**
Bertan dauden preso politikoak, hauen artean euskal preso politikoak, preso sozial batek mehatxatuak izan dira hainbat aldiz. Egoera honen aurrean preso politikoak hainbat protesta burutu dituzte eta preso sozial honen jarrera salatzeko hainbat idatzi ere egin zituzten. Hala ere, espetxeak ez zuen ezer egin, eta azkenean abuztuaren 25ean PCEko preso politiko bat eraso zuen. Azkenean, preso soziala beste espetxe batetara eraman zuten.

**Granada**
Igerilekua itxi dute krisiaren aitzakiarekin.

**Sevilla II**
Bertan aurkitzen diren euskal preso politikoak bost galeriatan egotetik bi galeriatan egotera pasa dira; hala ere, praktikan ez da ezer aldatu patiora binaka edo hirunaka ateratzen jarraitzen dutelako.
Uztailaren 13an, itxialdia burutu zuten espetxeko bizi baldintzak salatzeko.
Hiru astez zerbitzu medikurik gabe egon ziren.

**Villena**
Igerilekua itxi dute krisiaren aitzakiarekin.

***Frantziar estatua***

**Fleury**
Emakumeen moduluan egindako borrokaldiarekin kantinarekin zituzten murrizketak atzera botatzea lortu dute; kendutako produktuak berreskuratu dituzte.

**Lyon Corbas**
Uztailaren 11n, espetxe honetan aurkitzen diren euskal preso politikoei, Lyon-Corbaseko zuzendaritzak eta eskola nazionalak antolaturiko diploma banaketan parte hartzea ukatu zieten. Diploma banaketak presoek gainditutako azterketen tituluak banatzea zuen helburu. Kide guztiek parte hartu dute ikastaro zein eskolatan, eta hainbat azterketa egiteko aukera izan dute, baina diploma banaketatik kanpo utzi dituzte. Gainera, hau da espetxe honetan burutzen den ekitaldi misto bakarrenetakoa, eta erabaki hau baliatuz espetxe honetan aurkitzen diren sei euskal preso politikoei elkartzeko duten aukera bakarra ukatu diete.

**Nanterre**
Azken aldian tentsio uneak bizi dira miaketetan. Izan ere, bisitak amaitu ostean biluzarazi egiten dituzte, eta azken aldian eskuarekin oinetakoak txakurrei ematera behartu nahi izan dituzte.

**Toulon**
Juan Carlos Estevez euskal presoa bandejari uko egiten ari da uztailaren 11tik, sakabanaketa eta isolamendua salatzeko. Izan ere, Estevez bakarrik aurkitzen da pasa den urriaren 20tik; eta 2010eko ekainean Toulunera iritsi zenetik igarotako 25 hilabeteetatik, 17tan guztiz bakarrik egon da. Egoera benetan larria denez, bandejari uko egitea erabaki du, mugagabe.

6. 

# ASKATASUNAK, ESPETXERATZEAK ETA LEKUALDATZEAK

## Askatasunak

Irati Tobar (Portugalete), uztailaren 3an. Bermea ordainduta.
Endika Perez (Larrabetzu), uztailaren 3an. Bermea ordainduta.
Agustin Figal (Santurtzi), uztailaren 7an. 10 urte preso igaro ostean, eta konfinatua egon ondoren.
Jordi Grau (Karrantza), uztailaren 7an. 6.000 euroko bermea ordainduta.
Peio Hirigoien (Beskoitze), uztailaren 10ean. Bi urte espetxean igaro ostean.
Luis Armando Zabalo "Txetxi" (Basauri), uztailaren 10ean. 8 urte espetxean igaro ostean, behin-behinean aske.
Aitor Lorente (Bilbo), uztailaren 13an. 5 urte espetxean igaro ostean, behin-behinean aske.
Fernando Diaz (Bilbo), uztailaren 18an. 20 urte espetxean igaro ostean, eta Auzitegi Gorenak 197/2006 doktrina atzera botata.
Leire Martinez (Durango), uztailaren 24ean. Zigorra beteta.
Gorka Mayo (Barañain), uztailaren 24an. 10.000 euroko bermea ordainduta.
Ugaitz Elizaran (Donostia), uztailaren 25ean. 5.000 euroko bermea ordainduta.
Urko Aierbe (Donostia), uztailaren 25ean. 9.000 euroko bermea ordainduta.
Jose Aldasoro (Etxarri-Aranaz), uztailaren 25ean. 9.000 euroko bermea ordainduta.
Anaiz Ariznabarreta (Eibar), uztailaren 25ean. 9.000 euroko bermea ordainduta.
Erika Bilbao (Erandio), uztailaren 25ean. 9.000 euroko bermea ordainduta.
Eneko Compains (Iruñea), uztailaren 25ean. 9.000 euroko bermea ordainduta.
Egoitz Garmendia (Otxandio), uztailaren 25ean. 9.000 euroko bermea ordainduta.
Rosa Iriarte (Iruñea), uztailaren 25ean. 9.000 euroko bermea ordainduta.
Igor Martin (Ondarru), uztailaren 25ean.
Zunbeltz Bedialauneta (Ondarru), uztailaren 25ean.
Miguel Angel Llamas (Noain), uztailaren 26an. 10.000 euroko bermea ordainduta.
Iker Moreno (Burlata), uztailaren 26an. 10.000 euroko bermea ordainduta.
Patxi Arratibel (Etxarri-Aranaz), uztailaren 26an. 10.000 euroko bermea ordainduta.
Urtza Alkorta (Ondarru), uztailaren 27an. Behin-behinean.
Gorka Zabala (Zizur), abuztuaren 29an. 10.000 euroko bermea ordainduta.
Iosu Esparza (Iruñea), abuztuaren 29an. 50.000 euroko bermea ordainduta.

## Espetxeratzeak

Maialen Zuazo (Bilbo), ekainaren 27an.
Josu Rodrigez (Bilbo), ekainaren 30ean. Basaurin espetxeratu dute.
Juan Mari Mujika (Ataun), uztailaren 4an atxilotu zuten Barkoxen. Muret-Seysses presondegian espetxeratu dute.

Beñat Atorrasagasti (Lesaka), uztailaren 13an Edinburgon atxilotu zuten. Edinburgoko espetxean espetxeratu zuten.
Kemen Uranga (Ondarru), abuztuaren 7an atxilotu zuten Londresen. Belmarshen espetxeratu dute.
Arturo Villanueva (Iruñea), abuztuaren 27an atxilotu zuten Urruñan.

***DESTINU ALDAKETAK***

**Espainiar Estatua**
Egoitz Garmendia (Otxandio): Alcala Meco-tik Aranjuez-era.
Felipe San Epifanio (Bilbo): Zuera-tik Herrera de la Mancha-ra.
Josu Arkauz (Arrasate): Zuera-tik Murcia II-ra.
Ventura Tome (Tafalla): Soto del Real-etik Murcia I-era.
Inma Patxo (Bilbo): Malaga-tik Murcia II-ra.
Joxepa Ernaga (Mezkiritz): Malaga-tik Jaen II-ra.
Fernando Diaz (Bilbo): Villabona-tik Topas-era.
Maialen Zuazo (Santutxu): Soto del Real-etik Extremera-ra.
Ander Geresta (Gabiria): Soto del Real-etik Daroca-ra.
Iosu Uribetxebarria (Arrasate): Leon-etik Zaballa-ra (Donostiako Ospitalean aurkitzen da).
Edu Perez de Anuzita (Igorre): Picassent-etik Murcia II-ra.
Manex Castro (Villabona): Picassent-etik Puerto III-ra.
Sergio Polo (Sopela): Picassent-etik Cordoba-ra.
Diego Octavio (Iruñea): Iruñea-tik Dueñas-era.
Andoni Ugalde (Bilbo): Daroca-tik Badajoz-era.

**Frantziar Estatua**
Ander Mujika (Donostia): Moulins-Yzeure-tik Bourg en Bresse-ra.
Ibai Sueskun (Iruñea): Fresnes-etik Marseille-Baumette-ra.
Iñaki Domingez (Gernika): Osny-tik Villepinte-ra.
Mikel Karrera (Iruñea): Osny-tik Villepinte-ra.
Borja Gutierrez (Berango): Villepinte-tik Osny-ra.
Joseba Fernandez (Iruñea): Villepinte-tik Osny-ra.
Iñigo Sancho (Bilbo): Villepinte-tik Osny-ra.
Ibai Sueskun (Iruñea): Marseille-tik Tarascon-era.

***DILIJENTZIAK***

**Espainiar Estatua**
Koldo Aparicio (Basauri): Puerto I-etik Basauri-ra.
Jon Gonzalez (Santurtzi): Estremera-tik Aranjuez-era.
Jon Urretabizkaia (Elorrio): Cordoba-tik Basauri-ra.
Xabier Garcia (Galdakao): Navalcarnero-tik Puerto III-ra.
Iñaki Erro (Iruñea): Almeria-tik Iruña-ra.
Jon Gonzalez (Santurtzi): Aranjuez-etik Estremera-ra.
Dani Pastor (Bilbo): Puerto III-tik Navalcarnero-ra.
Iñigo Zapirain (Bilbo): Jaen II-tik Aranjuez-era.

